# SAN ANTOLIN, Martiria (09/02)



## Sarrera-oharra

Palenciako zaindari dan santu martiri honen bizitzaz ezer gitxi jakin daiteke. Espainiakoa zan? Frantziako Pamiersekoa? Siriako Apameakoa? Badirudi IV. gizaldian Diokleziano enperadorearen aldietan hil ebela: samea moztu eta bere gorputz-atalak sakabanatu egin ebezala. XVII. gizaldian Palenciako katedraleko Kabildoak batu nahi izan ebazan gorpuzkinak, baina ez eben ezer ere lortu, Calvinotarrek ostu eta desegin ei ebezala-eta.

Haren omenez alkartzen gara gu otoizgiroan. Sinismena indartzearren eta gaurko egunetan, Antolinen antzera, Jesu Kristoren jarraitzaile izan gura dogulako? Holan bada, haren bidez eskatu deiogun Jainkoari grazia hori, eta alkar adoretu daigula kristau bizitzea gaurkotasunez bizi izaten.

## Sarrera-abestia

**ZEIN GOZO TA EDER DAN** anaiok alkartu
eta danok batera Jainkoa goratu.

[1] *Gora bihotzak eta guztiok egin kantu*

*Jainkoak bere eskuz salbatuko gaitu.*
*[2] Zabal gogoak Jaunaren hitza entzuteko*
*bere nahia jakinik zuzen ibilteko.*

**Abadearen agurra**

† Jaungoiko gure Aitaren eta Jesu Kristo gure Jaunaren grazia eta bakea zuekin.
—Bedeinkatua Jaungoikoa, Jesu Kristo gure Jaunaren Aita.

**Damu-otoitza**

Senideok: Jainkoak gure bizitzarako eredu emoten deuskuz santuak. Antolin dogula gogoan jo daigun Jainkoaren errukira:

—Jesus Jauna, Jainkoaren nahia ezagutzera **ga**roazuzana, *erruki, Jauna*.
—Jesus Jauna, zure gose diranak zeure hitzaz jana**ri**tzen dozuzana, *Kristo, erruki*.
—Jesus Jauna, Jainko Aita-Ama santu dalako, santu **na**hi gaituzuna, *erruki, Jauna*.

**Aintza**

**OTOITZA**

Oi Jainko,
Antolin martiri dohatsua lagun dogula,
otoitz egiten deutsugu:
emoiguzu bakea lur honetan
eta betiko bizia zeruan.
Zure Seme Jesu Kristo…

## HITZAREN LITURGIA

**Irakurgaiari oharra**

Inoiz be ez da erreza izan Jesusen jarraitzaile izatea; jarraitzaileek beti jasan dabez erasoaldiak. Norberagan dago zintzotasunez erantzutea, besteekaz batera Eleiza egitea.

*Burruka gogorra egin behar izan zenduen.*

**Hebrearrei egindako epistolatik** Heb 10, 32-36

Senideok: Gogoratu egizuez hasierako egun hareek: fedea-ren argia hartu barri haretan burruka gogorra eta neketsua egin behar izan zenduen. Zuetako batzuek irainak eta tratu txarrak jasan zenduezan guztien aurrean; besteok, holan erabilitakoen lagunkide izan zinien; giltzapetuen oinazeetan parte izan zenduen eta pozik sufridu zenduen zeuen ondasunak kendu eutsueezanean, jakinik aberastasun hobea eta iraunkorragoa zenduela.

Ez galdu, beraz, adorea, beragaz sari handia dakar-eta. Iraupena behar dozue, Jainkoaren nahia betez agintzaria eskuratzeko.

Jaunak esana

**Erantzun salmoa (Sal 126** [125], 1-2ab. 2cd-3. 4-5. 6 (R/. ik. 5)**)**

Neketsua egiten jaku lana, eta poztu egiten gaitu sariak. Baina, izan gogoan: ebanjelioaren saria bera iragartea da, Jaunaren testigu izatea.

**R/. Negarrez erein eben; pozez batuko dabe.**

Jaunak Sionen zoria aldatu ebanean,
amesetan lez gengozan.
Barrez bete jakun orduan ahoa,
poz-oihuz mihina. R/.

Jentil-herrietan be esan eben:
«Handikiro jokatu dau Jaunak hareen alde».
Handikiro jokatu dau Jaunak gure alde,
eta pozarren gagoz! R/.

Aldatu, Jauna, gure zoria,
euri-jasek basamortua lez.
Malkoz erein ebenek
pozez batzen dabe. R/.

Negarrez joan ziran,
hazi-zorroa eroanez;
poz-oihuka datoz,
gari-eskutadak ekarriz. R

**R/. Aleluia.**

Gora Zu, Jainkoa, eskerrak Zuri, Jauna;
martirien talde zuriz jantziak goratzen zaitu, Jauna.

**Ebanjelioa** (Lk 9, 23-26)

*Bere bizia Nigaitik galtzen dauanak salbatu egingo dau.*

**† Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik**

Aldi haretan, Jesusek hauxe esan eutsen guztiei: «Nire ondoren etorri gura dauanak uko egin beio bere buruari, hartu begi eguneroko bere kurutzea eta jarraitu beist. Izan be, bere bizia salbatu gura dauanak galdu egingo dau; baina bere bizia Nigaitik galtzen dauanak salbatu egingo dau».

Zertarako dau gizonak edo emakumeak mundu guztia irabaztea, bere bizia galtzen eta hondatzen badau?

Beraz, inor nitaz eta nire mezuaz lotsatzen bada, Gizonaren Semea be lotsatu egingo da haretaz, bere aintzarekin, bere Aitaren aintzarekin eta aingeru santuen aintzarekin etorriko danean».

Jaunak esana

**Homilia**

**HERRI OTOITZA (Eskariak)**

Jainko Aitak bizitzara ekarri gaituanetik eta gehiago, ondasunez beteten gaitu. Aurkeztu deioguzan gure beharrizanak eta eskatu:

—Eleizearen alde: santuen bizitza aurkezten jakin daian, eta guretzat eredu izan daiten, *eskatzen deutsugu, Jauna***.**

—Eleizatik urrunduz, Jainkoagazko hartu-emonik barik gelditu diranen alde: Jainkoaren maitasunagaz topo egin

daien, *eskatzen deutsugu, Jauna.*

—Santuak azaletik omentzen dabezanen alde: Jesusen jarraitzaile izateko eredutzat ere izan daiezan, *eskatzen deutsugu, Jauna.*

—Eukaristia honetara hurreratu garanon alde: santuak eta hareen irabaziak ez daiguzan alperrik erabili eta eralgi, bilatu daigun baino benetako gogo-osasuna, *eskatzen deutsugu, Jauna.*

† Zeruko Aita/Ama ona: zure santuen bizikeran zeu goresteko eta aintzaltzeko erea eta indarra aurkitu daiguzala. Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

—Amen.

**Oparien gainekoa**

Isuri, Jauna, zure bedeinkapena
gure emoitzon gainera;
zure maitasunak sutu gaizala,
maitasun horren indarrez garaitu ebazan-eta
Antolin santu martiriak bere gorputzeko oinazeak.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen

V/. Jauna zuekin. R/. Eta zure espirituarekin.
V/. Gora bihotzak. R/. Jaunagan daukaguz.
V/. Eskerrak Jaungoiko R/. Egoki da eta zuzen. gure Jaunari.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri.

Kristori jarraituz, Antolin martiri santuak
zure izena autortzeko isuri eban odolak
argi erakusten ditu zure miragarriak:

gure makaltasunean zeure ahalmena agertzen dozu
eta indartsu egiten indarrik bakoa,
zure testigu izan dadin,

Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Horregaitik, zeruko indar guztiekin,
lurrean beti eta beti goresten zaitugu,
Zuri, Jainko guztiz handi horri,
eten barik [esanez] kantatuz:

Santu, Santu, Santua…

## III. Eukaristi-Otoitza

Santu zara, bai, Jauna,
eta diran guztiek emoten deutsue behar dan gorespena.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez
eta Espiritu Santuaren indarrez,
Zeuk biziazoten dituzu guztiak eta santutzen
eta Zeuk diharduzu beti eta beti zeure herria batzen,
eguzkialde batetik besteraino
opari garbia eskeini dakizun.

Apalik, beraz, Jauna, eskatzen deutsugu:
egin daizuzala santu, zeure Espirituaren indarrez,
oparitako ekarri ditugun ogi-ardao honeek,
zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren
Gorputz eta † Odol egin daitezan,
misterio honeek berak agindurik egiten ditugun ezkero.

Berak, saldu eben gau haretan,
ogia hartu eta, Zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban,
zatitu eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

> HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
> HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
> ZUENTZAT EMONGO DANA.

Era berean, afalondoan, kaliza harturik,
Zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban
eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**Hau da sinismenaren misterioa.**

Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte, hau dogu, hau, barri ona!

Horregaitik, Jauna, guk,
zure Semearen nekaldi salbagarria eta hilen artetik biztea
eta zeruratze miragarria gogoratuz,
haren azken etorrera itxaroten dogula,
Zuri eskerrak emoteko eskeintzen deutsugu
sakrifizio bizi eta santu hau.

Begira, Jauna, zeure Eleizearen eskeintza honi;
ikusi eskeintza honetan
Zurekin baketu gaituan Jesu Kristoren oparia;
egizu, Jauna, zure Semearen Gorputza eta Odola hartzen ditugunok,
Espiritu Santuaz beterik, Jesu Kristogan
gorputz bat eta espiritu bat izan gaitezala.

Berak egin gaizala Zuretzat betiko opari,
zure aukeratuekin zerua jaritsi daigun:
lehenengo, Maria guztiz dohatsua, Jainkoaren Ama beti Birjinarekin,
haren senar Jose santuarekin,
zure Apostolu eta martiri santuekin,
**Antolin** martiri santuarekin eta santu guztiekin;
badakigu, honeen bitartez
zure laguntza izango doguna nonahi eta beti.

Gu Zurekin baketzen gaituan opari hau izan bedi, Jauna,
mundu guztiarentzat bake eta salbamen.

Mundu honetako ibilaldian,
bete egizu sinismenez eta maitasunez zeure Eleizea:
zeure zerbitzari Frantzisko gure Aita Santua,
Joseba gure Gotzaina,
beste gotzain eta eleizgizon (-emakume) guztiak
eta zeurea dozun herri osoa.

Entzun, bihotz onez,
zeure aurrera deitu dozun familia honen otoitzak;
Aita guztiz ona, erakarri Zeugana
mundu zabalean banaturik dabiltzan zeure seme-alabak.

† Hildako gure senideak,
eta mundu honetatik Zurekin adiskide joan diran guztiak,
hartu egizuz bihotz onez zeure zeruan;
geuk ere sinisten dogu
zure aintzaren zorion betea izango dogula betiko, eurekin batean,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez;
beronen eskuz emoten deutsazuz ondasun guztiak munduari.

Honen bitartez, honekin eta honengan,
Zuri, Jainko Aita ahalguztidun horri,
Espiritu Santuarekin batean,
ospe eta aintza guztia gizaldi eta gizaldi guztietan.
Amen.

Salbatzaileak agindu eta irakatsiari jarraituz,
bildur barik esan dagigun:

Gure Aita, zeruetan zarana:
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia zeruan bezala lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak,
geuk ere geure zordunei parkatzen deutsegun ezkero,
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,

baina atara gagizuz gatxetik.

Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik;
emoiguzu bakea gure egunotan;
zure errukiari esker pekatutik garbi bizi gaitezan
eta estualdietan sendo,
betiko zorionaren itxaropenean,
Jesu Kristo gure salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozala.

Zeurea dozu erregetza,
zeureak ospe eta indarra orain eta beti.

Jesu Kristo gure Jauna, Zeuk esana da Apostoluei:
«Bakea izten deutsuet, neure bakea emoten»:
Begira zeure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei
eta, zeure gogoa danez, emoiozu Eleizeari bakea, emon batasuna.
Errege bizi zara-eta gizaldi eta gizaldietan.

Amen.

† Jaunaren bakea beti zuekin.
—Eta zure espirituarekin.
† Emoiozue bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa, Zeuk kentzen dozu munduko pekatua: erruki, Jauna.
Jaungoikoaren Bildotsa, Zeuk kentzen dozu munduko pekatua: erruki, Jauna.
Jaungoikoaren Bildotsa, Zeuk kentzen dozu munduko pekatua: emoiguzu bakea.

Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa,
hona munduko pekatua kentzen dauana.
Zoriontsuak Jaunaren mahaira deituak!

Jauna, ni ez naz inor Zu nire etxean sartzeko;
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

Kristoren Gorputza.
Amen.

## JAUNARTZEAN

1. Ogi hau jaten dauanak izango dau bizia.
Kaliz hontan aurkitzen da Jainko-odol guztia:
**R/. Hor dogu janaria ta hor gure edaria.**

2. Jaungoikoak deitzen gaitu: bera dogu janari.
Beragan dogu aurkitzen osasuna ugari.
**R/. Zelan begiratzen deutson Jainkoak gizonari!**

3. Danok gaur jaten badogu ogi bat mahai batean
ezin izan gorrotorik gaurtik gure artean.
**R/. Alkar maitatu dagigun Jesusen izenean.**

**Jaunartze ondorengo otoitza**

Hartu dogun Eukaristiak indartu gaizala, Jauna,
**Antolin** martiri santua indartu eban lez,
bai zure zerbitzuan leial jokatzeko,
bai bere nekealdian sendo irauteko.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.
Amen.

**Azkenean**

Jesu Kristoren jarraitzaileok, santuak eredu doguzala, gure bizitzaldia besteen onerako eralgiten dogu, batez ere aldi egokiak ez diranean. Gure eginbeharra, ba, alkar adoretzea da; daukagun eleiz senitartea bizkortzea; eta daukagun Eleizea gaurkotzea, ateak zabalik izatea eta behartsuen bila urtetea. Antolinek bultzatu gaizala eginkizun horretan.

**Bedeinkapena**

† Jauna zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

† Bedeinka zaizela Jainko ahalguztidunak: Aitak eta Semeak † eta Espiritu Santuak.
—Amen.

**Abestia**

**ALKARTUTA GOAZEN AURRERA KANTARI,**
**BIHOTZAK ZABALDUZ BETIKO POZARI (bir).**

*Maitasun ta zuzentasunez dezagun*
*lortu anaien askatasun,*
*Badator-eta Jaunaren betiko egun.*
*Hor dugu distiratsu egunsentiko argitasun.*


Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta

beti guk Zuri eskerrak e-mo-te-a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu,

Jainko ahalguzti - dun be - ti - ko ho-rri. Kris-to-ri jarraituz,

Antolin martiri san-tu-ak, zure izena autortzeko isuri eban o-do-lak

argi erakusten ditu zu-re mi-ra - ga-rri-ak: gure ma-kaltasunean

zeure ahalmena agertzen do-zu-la-ko, eta indartsu egiten indarrik

ba - ko - a, zeure testigu izan da-din, Jesu Kristo gure Jau-na-

ren bi-tar-tez. Horregai-tik, zeruko indar guz-ti-e-kin, lurrean

beti eta beti goresten zai-tu-gu, Zuri, Jainko guztiz handi ho-rri,

e - ten ba - rik kan-ta-tuz:

